


Larrabetzuko **ibilbide laburrak**, neska mutikoekin **oinez** egiteko

2020ko udaberria



**1. ibilbidea**

Larrabetzuko plazatik irtenda, **Errebale** kalean gora, zintarritik **Kiskibile**ra. Kiskibiletik oinezko bide itzela dago **Mirasol**eraino. Kilometro bateko ibilbidea da; joan etorrian pare bat.

Iturria: Errebalen



2. ibilbidea

**Zubibarri**tik irten, eta **Pinuape** ondotik, **Elixoste** paretik Haur eskolarantza, depuradoran zubia pasatu eta erreka ondotik ***Harrikola*** errokodromora joango gara oinez, oso bide polita da, bariantea eta errekaren arteko bide zidorretik. Harrikola ondoan, barriro egurrezko zubia gurutzatu eta **Sarrikola** auzoko baserrietara joango gara. Sarrikolatik, zintarritik oinez urira. **Andra Mari** kaletik sartuko gara plazara.

Iturria: Zubibarrin



3. ibilbidea

**Plaza**tik **Mikel Zarate** kaletik joango gara oinez, **Eleizalde**rako norabidean. **Miranda**ko kurbatik jarraitu eta autobus geltokiaren markesinaren ostean (**Zubiaurre baserria**) **Goikola**ra sartuko gara. Iturri ederra dago *Terrazos* ondoan, **Plaza** baserriti ondotik **Ametza** baserriraino helduko gara. Ametzan behiak ikusi, Eleizaldeko parajeak urrunetik ikusi eta buelta egingo dugu bide beretik txiri txiri. Barriro urira heltzeko. Ordua atoan joaten da eta.

Iturria: Goikolan



4. ibilbidea

**Errebale** kaletik, eskola eta futbol zelaiaren ondotik oinez ekingo diogu bideari **Kiskibile**ra. Zebrabidetik gurutzatu eta **Bersoa** auzorantza joango gara.
Bersoan errepidetik aurrera jarraituko dugu, Leginarako bidegurutzeraino. Leginara joan barik, ezkerretara egin eta Agarrebehekoraino helduko gara, Txorierriko korredoreari paraleloan. Agarre beheko baserritik, bidea dago aldapan gora Agarre baserrira. Hortik, asfaltozko bidetik Iturrikoetxe auzora helduko gara. Alboan Olarretako landak, eta uri osoaren ikuspegia.  Aita Patxi Ugaldera heldu, ur tragoska bat egin eta etxera joango gara barriro,

Iturria: Errebale eta Iturrikoetxen



5. ibilbidea

**Zubibarri**tik irtetzen den ibilbide honetan, joan etorriko ibilbidea egingo dugu.  **Basara** auzoa gurutzatu, eta **Manuene**rantz joango gara. Bide lasaia eta polita da. Baserri artetik, soloak inguruan eta ardiak eta behiak ere ikusiko ditugu inguruan. Buelta lasaiago egingo dugu, beherantza.

---

6. ibilbidea

**Zubitaldetik** ateratzen den bigarren ibilbidea da hau. **Etxebarritxu** eta **Basara** auzoak ikusiko ditugu. Momentu batean asfaltozko bidea itxi eta eskumatara egingo dugu **Goiritxu**ko soloen ondotik. Haritz artean oinezko estarta bat dago, eta bidea jarraituko dugu artez. Eta apurka apurka beherantza egingo dugu, errekara heldu arte.

Erreka ondoan eskumatara egin eta basotxo eder baten sartuko gara, zuhaizken artean astiro astiro, txoriak entzun eta erreka ondotik

pasatuko gara. Salto baten, edo enborren gainetik erreka gurutzatu eta errekaren norabidea jarraituko dugu **Sarrikola**rantza.



***Harrikola*** ondoan, egurrezko zubia gurutzatu eta **Sarrikola** auzoko baserrietara joango gara. Sarrikolatik, zintarritik oinez urira. **Andra Mari** kaletik sartuko gara plazara.



7. ibilbidea

**Gaztelumendi** kaletik aterako gara (Txispamendi okindegia eta Koloretakak frutadenda) eta txaleten ondotik **Basagune**ra igoko dugu astiro astiro. Basagunen baserri artetik aldapa handia izango dugu, **Iuntze**ra heltzeko. Iuntzen **San Bartolome** baselizaren ondoan , atsedena hartzeko oso leku polita dago. .Inguruan haritzak eta gerizpe ona. Hamaiketako txiki bat eta berriro oinez egingo dugu txiri txiri urirantza.

Iturria: **Basagune**ko baserritik beherantz joanda (urirako norabidean ezkerretara) iturri eder bat dago.